# Garizumako III. astea

## Aukerako Meza

Irakurgai honeek aste honetako edozein egunetan erabili daitekez, batez ere **B** eta **C** urteetan, hau da, samariar emakumearen ebanjelioa Garizumako III. domekan irakurri ez danean.

### I. IRAKURGAIA

*Ura sortuko da, herriak edan dagian.*

Urteera liburutik

*Ur* 17, 1-7

Egun hareetan, israeldarren alkarte osoa, Jaunaren agindura, Sin basamortutik abiatu zan, geldialdiak eginez. Refidimen ipini eben kanpalekua; baina ez zan han urik herriak edateko.

Herriak, orduan, aurpegi emon eutson Moisesi, esanez: «Emoiguzu ura edateko». Moisesek erantzun: «Zergaitik aurpegi emoten deustazue niri? Zergaitik tentatzen dozue Jauna?»

Baina herria egarri zan, eta Moisesen kontra marmarka ziharduan:

«Honetarako atara gaituzu Egiptotik ala, gu, gure seme-alabak eta abereak egarriz hiltzeko?» Moisesek deadar egin eutson Jaunari: «Zer egin behar dot nik herri honegaz? Harrika egingo deuste laster».

Jaunak erantzun eutson Moisesi: «Jarri zaitez herriaren aurrean eta eroan zeugaz herri-arduradun batzuk. Hartu eskuan Nilo ibaia jotzeko erabili zenduan makilea, eta zoaz. Han zeure aurrean izango nozu Ni, Horeb mendiko hatx gainean. Hatxa jo eta ura sortuko da handik, herriak edan dagian».

Halan egin eban Moisesek Israelgo arduradunen aurrean. Toki hari Masa eta Meriba, hau da, Tentaleku eta Auzileku, ezarri eutson izena, han berari aurpegi emon eta Jauna tentatu ebelako, esanez: «Gure artean dago Jauna, bai ala ez?»

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 95 [94], 1-2. 6-7c. 7d-9 (R/. 8)

R/. **Entzungo ahal dozue gaur Jaunaren ahotsa!:**

**«Ez gogortu zeuen bihotza».**

V/. Zatoze, egin deiogun poz-oihu Jaunari,
poz-irrintzi, salbatzen gaituan hatxari.
Aurkeztu gakiozan eskerrak emonez,
Egin deiogun jai txaloka eta kantari. R/.

V/. Zatoze, gurtu dagigun ahuspezturik,
belaunikatu gaitezan egin gaituan Jaunaren aurrean.
Bera da-eta gure Jainkoa,
eta gu harek larraturiko herria,
haren zainpeko artaldea. R/.

V/. Entzungo ahal dozue gaur haren ahotsa:
«Ez gogortu bihotza Meriban lez,
Masako egunean basamortuan lez,
tentatu egin ninduen-eta zuen gurasoek,
probatu, Nik eginak ikusi arren». R/.

Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 4, 42. 15

V/. Jauna, Zeu zara benetan munduaren Salbatzailea;
emoidazu ur hori, barriro egarritu ez

nadin.

## EBANJELIOA

*Ur hau*
*betiko bizia darion iturburu bihurtuko da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 4, 5-42

Aldi haretan, Jesus Sikar deritxon Samariako urira heldu zan, Jakobek bere seme Joseri ondare emondako lur-sail ondora. Hantxe egoan Jakoben pozua. Jesus, bideaz nekatuta, pozu-ertzean jesarri zan. Eguerdi ingurua zan.

Ikasleak urira joanda egozan, jatekoak erostera. Horretan, Samariako emakume bat etorri zan ur bila, eta Jesusek esan eutson: «Emoidazu edaten». Samariar emakumeak esan eutson: «Zelan zuk, judegu izanik, eskatzen deustazu edatekoa niri, samariar nazan honi?» (Jakin behar da, judeguek eta samariarrek ez dabela alkarregaz hartu-emonik).

Jesusek erantzun eutson: Jainkoaren dohaia zein dan eta edatekoa nork

eskatzen deutsun jakingo bazendu, zeuk eskatuko zeunskio berari, eta harek ur bizia emongo leuskizu».

Emakumeak esan eutson: «Jauna, ez daukazu ura zegaz atara, eta pozua sakona da; nondik atara behar dozu ur bizi hori? Gure aita Jakobek emon euskun pozu hau eta bertotik edan eben harek, haren seme-alabek eta abereek. Ha baino handiagoa ete zara Zu?»

Jesusek erantzun eutson: «Ur honetatik edaten dauana, barriz be egarritu egiten da; Nik emondako uretik edaten dauana, ostera, ez da gehiago egarrituko sekula; ze, Nik emongo deutsadan ura, betiko bizitza darion iturburu bihurtuko da harengan».

Orduan, emakumeak: «Jauna, emoidazu ur hori, barriro egarri izan ez naiten, eta hona ur bila etorri beharrik izan ez dagidan».

Jesusek esan eutson: «Zoaz, deitu zeure senarrari eta bihurtu hona». Emakumeak erantzun eutson: «Ez dot senarrik». Eta Jesusek: «Ondo esan dozu ez dozula senarrik; izan be, bost izan dituzu, eta oraingoa ez dozu

senarra; horretan egia dinozu». Emakumeak esan eutson: «Jauna, ikusten dot profeta zarala. Gure gurasoek mendi honetan gurtu eben Jainkoa; zuek, judeguok, barriz, Jerusalemen gurtu behar dala dinozue».

Jesusek erantzun eutson: «Sinistu eidazu, emakume: badator ordua, ez mendi honetan, ez Jerusalemen, Aita gurtuko ez dozuena. Zuek ez dakizue zer adoratzen dozuen; guk badakigu zer adoratzen dogun, ze, salbazinoa judeguokandik dator. Baina badator ordua, hobeto esan, etorria da, benetako adoratzaileek Aita espirituz eta egiaz adoratuko dabena. Izan be, Aitak holako adoratzaileak gura ditu. Jainkoa espiritua da, eta ha adoratzen dabenek espirituz eta egiaz adoratu behar dabe».

Emakumeak esan eutson: «Badakit Mesias, hau da Kristo, etortzekoa dana, eta harek, etortzean, gauza guztiak agertuko deuskuzana». Eta Jesusek: «Neu nozu, zugaz berbetan dihardudan berberau».

Une haretan etorri ziran ikasleak eta harritu egin ziran emakume bategaz

berbetan zihardualako. Halan be, ez eutson inork itaundu zer gura eban edo zertaz zihardualan emakumearekin. Emakumeak ur-ontzia bertan itzi, urira joan eta jenteari esan eutson: «Zatoze, egin dodan guztia esan deustan gizona ikustera. Ez ete da bera Mesias?» Jentea uritik urten eta Jesusengana joan zan.

Bitartean, ikasleak erreguka ebilkozan: «Maisu, jan egizu!» Baina harek esan eutsen: «Badaukat Nik zuek ez dakizuen beste janari bat». Ikasleek itaundu eutsoen alkarri: «Jatekoa ekarri ete deutso, ba, norbaitek?»

Jesusek esan eutsen: «Nire janaria bialdu nauanaren nahia egitea da eta haren salbazino-egintza burutzea. Ez ete dozue esaten zeuok: "Lau hilabete barru uztaroa dogu?" Horra, bada, Nik dinotsuedana: Jaso begiak eta ikusi gari-soloak, uztarako beilegituak. Eta daborduko badihardu igitariak lansaria hartzen eta betiko bizitzarako frutua batzen, bai ereilea eta baita igitaria, batera poztu daitezan. Honetan bai betetzen dala esaera: "Batek erein, beste batek batu". Zeuok landu ez

dozuena batzera bialdu zaituet Nik; beste batzuek egin dabe lana eta zuok jasotzen dozue hareen lanaren saria».

Uri haretako samariar askok sinistu eben Jesusengan emakumeak egindako autormenagaitik: «Egin dodan guztia esan deust». Samariarrek, Jesusengana etorri ziranean, eurakaz gelditzeko eskatu eutsoen, eta egun bi egon zan bertan. Jesusen berbea entzutean, askoz gehiagok sinistu eben. Eta emakumeari esaten eutsoen: «Orain ez dogu zure esanagaitik sinisten; geuk entzun deutsagu, eta badakigu hauxe dana egiaz munduaren Salbatzailea».

Jaunak esana.

## Garizumako III. astelehena

### I. Irakurgaia

*Bazan legenardunik asko Israelen;*
*halan be, ez zan hareetako inor osatu,*
*Siriako Naaman baino.*

Erregeak bigarren liburutik

*2 Erg* 5, 1-15a

Egun hareetan, Siriako erregearen gudalburu nagusia zan Naaman. Gizon

handitzat eukan bere nagusiak eta oso begiko eban, haren bitartez emon eutson-eta Jaunak garaipena Siriari. Baina gizon indartsu hau legenarduna zan.

Siriarrek erasoaldia egin eben baten, neskatila bat eroan eben katigu Israeldik eta Naamanen emaztearen neskame gelditu zan. Neskatileak etxekoandreari esan eutson: «Nire nagusia Samarian dagoan profetarengana joango balitz, osatuko leuskio harek legenarra».

Bere nagusiagana joan zan Naaman barri emotera: «Hau eta hau dino Israelgo neskatileak». Siriako erregeak esan eutson: «Zoaz, bada; gutuna emongo deutsut Israelgo erregearentzat».

Joan zan, beraz, Naaman, zidarrezko hamar talentu, urrezko sei mila txanpon eta hamar jantzi-sorta beragaz harturik. Naamanek gutuna emon eutson Israelgo erregeari; honan inoan: «Gutun honegaz batera, Naaman nire zerbitzaria bialtzen deutsut, legenarra osatu deiozun».

Israelgo erregeak, gutuna

irakurtzean, jantziak urratu eta esan eban: «Jainkoa ete naz, bada, ni, heriotza nahiz bizia emoteko? Legenarra osatu deiodan bialdu ei deust gizon hau. Argi ikusi daikezue atxakia bila dabilela nire aurka».

Jakin eban Eliseok, Jainkoaren gizonak, Israelgo erregeak jantziak urratu ebazala, eta albiste hau bialdu eutson: «Zer dala-eta urratu dozuz jantziak? Datorrela nigana gizon hori, eta jakingo dau badala profetarik Israelen».

Joan zan, beraz, Naaman, bere zaldi, gurdi eta guzti, eta Eliseoren etxe aurrean gelditu zan. Eliseok mezularia bialdu eutson esatera: «Zoaz eta hartu egizuz zazpi bustialdi Jordan ibaian, eta garbi geldituko zara».

Naaman, biziro hasarre, bajoian esanez: «Uste neban berak urtengo eustala, zutunik Jaunari bere Jainkoari dei egingo eutsola eta, alderdi gaixoa bere eskuz ikutuz, osatuko ninduala. Damaskoko Abana eta Farfar ibaiak ez ete dira, bada, Israelgo ur guztiak baino hobeak? Ez neintekean hareetan busti eta garbi gelditu?»

Eta bihurtu eta bajoian hasarre bizian. Baina bere morroiek hurreratu eta esan eutsoen: «Aita, profetak gauza zaila agindu izan baleutsu be, ez zenduan egingo? Zenbatez gehiago, "busti zaitez eta garbi geldituko zara" besterik esan ez deutsunean?»

Jaitsi zan, bada, Naaman siriarra Jordan ibaira eta zazpi bider murgildu zan, Jainkoaren gizonak agindu lez, eta umetxuarena baizen garbi gelditu jakon haragia.

Orduan, Jainkoaren gizonagana bihurtu zan bere lagun-talde osoagaz eta, haren aurrean zutunik, esan eutson: «Orain badakit ez dala munduan Jainkorik Israelena baino».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 42 [41], 2-3; 43 [42], 3-4 (R/. Sal 42 [41], 3)

R/. **Jainko biziaren egarri naz:
noiz helduko ete naz Jainkoaren aurpegia ikustera?**

V/. Basahuntza gogo biziz uretara lez,
halantxe nire gogoa, ene Jainko,

Zugana.
Jainkoaren egarri naz, Jainko biziaren egarri:
noiz helduko ete naz Jainkoaren aurpegia ikustera? R/.

V/. Bialdu zeure argia eta egia, gidatu nagiela,
eta eroan zure mendi santura, zure bizilekura.
Eta helduko naz Jainkoaren altarara,
neure poz betea dodan Jainkoagana.
Zitaraz goratuko zaitut, Jainkoa, ene Jainkoa. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Sal* 130 [129], 5. 7

V/. Jaunaren zain nago,
haren hitza dot itxaroten;
Jaunarena da-eta maitasuna,
berarena askapen betea.

## EBANJELIOA

*Elias eta Eliseo lez,*
*Jesus ez da judeguei bakarrik bialdua izan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 4, 24-30

Aldi haretan, Jesus Nazaretetera joan zan. Eta sinagogan jenteari esan eutson: «Hara Nik egia esan: Ez da profetarik bere herrian onartua danik. Benetan dinotsuet: Bazan emakume alargunik asko Israelen Eliasen sasoian, hiru urte eta sei hilabetez euria egin barik egonik, lurralde guztian gosete gorria izan zanean; halan be, Jainkoak ez eutson hareetako inori bialdu Elias, Sidon herrialdeko Sareptako alargunari baino. Eta bazan legenardunik asko Israelen Eliseo profetaren sasoian; halanda guzti be, ez zan hareetako inor osatu, Siriako Naaman baino».

Honeek entzutean, sinagogan egozan guztiak amorruz bete ziran. Eta jagirik, Jesus herritik kanpora atara eta herria jasota egoan mendiko trokara eroan eben, handik behera botatzeko asmotan. Baina Jesus hareen erditik igaro eta bere bidetik joan zan.

Jaunak esana.

## Garizumako III. martitzena

## I. Irakurgaia

*Bihotz-damuz eta gogo apalez gatorkizuz:*
*hartu gagizuz onez.*

Danielen Profezia liburutik

*Dn* 3, 25. 34-43

Egun hareetan, Azariasek, suaren erdian zutunik, honan egin eban otoitz:
«Zeure izenaren ohoreagaitik,
ez gagizuz betiko zapuztu, Jauna,
ez hausi gugaz dozun ituna.
Abraham zeure maiteagaitik,
Isaak zeure zerbitzariagaitik,
Israel zeure santuagaitik,
ez ukatu guri zeure errukia.
Hareei agindu zeuntsen
zeruko izarrak eta itsasbazterreko hondarra adina
ugarituko zeuntsezala ondorengoak.
Orain, ostera, Jauna, herri guztietan txikiena gara;
mespretxaturik gagoz mundu osoan geure pekatuakaitik.
Aldi honetan ez dogu erregerik,
ez profeta, ez buruzagirik,
ez erre-opari, ez sakrifiziorik,
ez eskeintza eta ez intsentsurik;
ez dogu lehen-frutuak Zuri eskeintzeko

tokirik,
ez zure errukia non aurkiturik.

Baina bihotz-damuz eta gogo apalez gatorkizuz;
hartu gagizuz onez,
ahariak eta zezenak edota milaka bildots gizen
erre-opari eskeiniko bageuntsuz lez.
Izan gaitezala gaur zuretzat opari atsegin
eta izan gaitezala zure jarraitzaile leial,
ez dira-eta inoiz lotsagarri izango
Zugan uste on dabenak.

Orain bihotz-bihotzez jarraitu nahi deutsugu,
zuganako begirunez bizi
eta zure aurpegiaren bila ahalegindu.
Ez gagizuz lotsagarri itzi;
jokatu egizu gugaz zeure bihotz onaz,
zeure neurribako errukiaz.
Libratu gagizuz zeure egintza harrigarriez,
eta emon gorapena zeure izenari, Jauna».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 25 [24], 4-5b. 6 eta 7cd. 8-9 (R/. ik. 6a)

R/. **Gogoratu zaitez zeure errukiaz, Jauna.**

V/. Azaldu niri, Jauna, zeure bideak,
erakutsi zeure bidezidorrak.
Gidatu nagizu zeure leialtasunean, eta irakatsi,
Zeu zara-eta nire Jainko salbatzailea. R/.

V/. Izan gogoan, Jauna, zeure erruki eta maitasuna,
betidanikoak dira-eta.
Gogoratu nitaz zeure maitasunean,
zeure ontasunari dagokionez, Jauna. R/.

V/. Ona eta zuzena da Jauna,
bidea erakusten deutse pekatariei.
Apalak zuzenbidez daroaz,
bere bidea erakusten deutse apalei. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jl* 2, 12-13

V/. Hauxe dino Jaunak:
Bihurtu zaiteze Nigana bihotz-bihotzez,

bihozbera eta errukitsua naz-eta.

## EBANJELIOA

*Alkarri parkatzen ez badeutsazue,*
*Aitak be ez deutsue parkatuko.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 18, 21-35

Aldi haretan, hurreratu jakon Pedro Jesusi eta itaundu eutson: «Jauna, nire senideak bidebakokeriaren bat egiten badeust, zenbat bider parkatu behar deutsat? Zazpi bider?»

Jesusek erantzun eutson: «Zazpi bider ez, ezpada ze zazpitan zazpi mila bider. Hatan be, bere morroiakaz kontuak garbitu gura izan zituan erregeagaz bezala gertatzen da zeruetako erreinuagaz. Kontuak garbitzen hastean, dirutza itzela zor eutson bat ekarri eutsoen. Eta nondik ordaindurik ez eukanez, bera eta emaztea, seme-alabak eta zituan guztiak saltzeko agindu eban nagusiak, zorra ordaintzeko.

Morroiak, orduan, nagusiaren oinetan ahuspezturik, arren eta arren esaten

eutson: “Emoidazu astia eta dana ordainduko deutsut”. Nagusiak, errukiturik, dana parkatu eta libre itzi eban morroia.

Baina morroiak, urten orduko, diru apur bat zor eutson bere morroilagunagaz topo egin eban, eta, samatik heldu eta ito beharrean, esan eutson: “Ordaindu eidak zor deustana”. Lagunak, oinetan ahuspezturik, arren eta arren esaten eutson: “Emoidak astia eta dana ordainduko deuat”. Baina besteak ezetz, eta joan eta kartzelan sartu eban, zorra ordaindu arte.

Beste morroiak, gertatua ikusirik, mindu-mindu egin ziran, eta nagusiagana joan eta gertatuaren barri emon eutsoen.

Orduan, nagusiak morroiari deitu eta esan eutson: “Morroi gaizto hori! Horrenbesteko zorra parkatu deuat nik, eskatu deustalako; ez ete zan bidezkoa heu be heure morroi-lagunaz errukitzea, neu hitaz errukitu nintzoan lez?” Eta nagusiak, hasarre bizian, borreroen esku itzi eban, zor guztia ordaindu arte.

Zeuoi be gauza berbera egingo

deutsue zeruko nire Aitak, senideok alkarri bihotzez parkatzen ez badeutsazue».

Jaunak esana.

## Garizumako III. eguaztena

### I. Irakurgaia

*Gorde egizuez eta bete nire aginduak.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 4, 1. 5-9

Honan berba egin eutson Moisesek herriari: «Orain, Israel, entzun irakasten deutsuedazan legeak eta erabagiak, eta bete. Holan, biziko zarie eta Jaunak zeuen asaben Jainkoak emongo deutsuen lurraldean sartuko zarie eta haren jaube egingo.

Begira, Jaunak nire Jainkoak niri agindutako legeak eta erabagiak irakasten deutsuedaz, jaubetzan hartzera zoazen lurraldean bete dagizuezan. Gorde egizuez eta bete, horrek jakitun eta buruargi egingo zaitue-eta herrien aurrean. Lege honeen barri izatean, esango dabe: "Bai herri jakituna eta buruargia nazino

handi hau! "

Izan be, ba ete da nazino handirik, bere jainkoak guk Jauna geure Jainkoa baizen hurrean dituanik, dei egiten deutsagun bakotxean? Ba ete da nazino handirik, gaur nik adierazoten deutsuedan irakaspen hau baizen lege eta erabagi zuzenak dituanik?

Baina kontuz! Ez ahaztu, gero, zeure begiz ikusi dozuzanak, ez urrundu zeure oroimenetik zeure bizitza osoan; irakatsi, ostera, zeure seme-alabei eta bilobei».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 147, 12-13. 15-16. 19-20 (R/. 12a)

R/. **Jerusalem, ospatu egizu Jauna!**

V/. Jerusalem, ospatu egizu Jauna,
Sion, goratu zeure Jainkoa,
zure ateen sarrailak indartu ditualako
eta seme-alabak zugan bedeinkatu. R/.

V/. Bialtzen dau lurrera bere mezua,
eta haren hitza bizkor eta arin doa.
Artilea lez jausiazoten dau edurra,

hautsa lez zabaltzen izotza. R/.

V/. Bere hitza iragarri deutso Jakoben herriari,
bere erabagiak eta aginduak Israeli.
Beste herriei ez deutse holakorik egin,
bere erabagirik ez deutse jakinazo. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 6, 63c. 68c

V/. Zure hitzak, Jauna, espiritu eta bizi dira;
zure hitzek betiko bizia dabe.

## **EBANJELIOA**

*Agindurik txikiena be bete*
*eta betetzen irakasten dauana handia izango da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 17-19

Aldi haretan, Jesusek esan eutson jenteari: «Ez uste izan Moisesen legea edota profeten esanak baztertzera etorria nazanik; ez naz baztertzera etorri, euren betera eroatera baino. Benetan dinotsuet: Zeru-lurrek iraungo daben bitartean, legearen letrarik edo

zeinurik txikienak be ez dau baliorik galduko, dana bete arte.

Beraz, agindurik txikienetako bat hausten dauana eta hausten irakasten, txikiena izango da zeruetako erreinuan; betetzen dauana, barriz, eta betetzen irakasten, handia izango da zeruetako erreinuan».

Jaunak esana.

## Garizumako III. eguena

### I. IRAKURGAIA

*Hona Jaunaren, bere Jainkoaren, ahotsa entzun ez dauan herria.*

Jeremias Profetaren liburutik

*Jr* 7, 23-28

Hauxe dino Jaunak: «Hauxe da nire herriari agindu neutsana: "Entzun nire ahotsa, eta Neu izango nozue zeuen Jainko, eta zuek izango zaituet neure herri; ibili Nik agindutako bidetik, zoriontsu izan zaitezen".

Baina ez eusten entzun, ez jaramonik egin, euren asmo eta bihotzeko jokera gaiztoen bidetik jo eben; atzea emon eusten, eta ez aurpegia.

Zuen asabei, Egiptotik urten ebenetik gaur arte, neure zerbitzari profetak bialdu neutsezan eten barik; baina ez eusten entzun, ez jaramonik egin, ostera, burugogor jarri ziran, eta euren gurasoek baino okerrago jokatu.

Zuk, Jeremias, hau guztia esango deutsezu, baina ez deutsue entzungo; dei egingo deutsezu, baina ez deutsue erantzungo. Orduan, hau esango deutsezu: "Hona Jaunaren bere Jainkoaren ahotsa entzun ez dauan herria, eta zentzabiderik onartu ez dauana. Galdua da leialtasuna, ez dabe aitatu be egiten"».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 95 [94], 1-2. 6-7c. 7d-9 (R/. 8)

R/. **Entzungo ahal dozue gaur Jaunaren ahotsa:**
**«Ez gogortu zeuen bihotza».**

V/. Zatoze, egin deiogun poz-oihu Jaunari,
poz-irrintzi, salbatzen gaituan hatxari.
Aurkeztu gakiozan eskerrak emonez,
Egin deiogun jai txaloka eta kantari. R/.

V/. Zatoze, gurtu dagigun ahuspezturik,
belaunikatu gaitezan egin gaituan Jaunaren aurrean.
Bera da-eta gure Jainkoa,
eta gu harek larraturiko herria,
haren zainpeko artaldea. R/.
V/. Entzungo ahal dozue gaur haren ahotsa:
«Ez gogortu bihotza Meriban lez,
Masako egunean basamortuan lez,
tentatu egin ninduen-eta zuen gurasoek,
probatu, Nik eginak ikusi arren». R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jl* 2, 12-13

V/. Hauxe dino Jaunak:
Bihurtu zaiteze Nigana bihotz-bihotzez,
bihozbera eta errukitsua naz-eta.

## EBANJELIOA

*Nire alde ez dagoanak, nire aurka dihardu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 11, 14-23

Aldi haretan, gizon bat mututurik eukan deabrua botatzen ziharduan

Jesusek. Deabruak urten baizen laster, mutua berbetan hasi zan. Jentea harrituta gelditu zan; batzuek, ostera, holan inoen: «Deabruen buruzagi dan Beeltzebulen indarrez botatzen ditu honek deabruak». Beste batzuek, azpikeriaz, Jainkoagandiko seinale bat eskatzen eutsoen.

Igarri eutsezan Jesusek euren burutazinoak eta esan eutsen: «Bere barruan zatiturik dagoan erreinua hondatu egingo da eta etxea etxearen gainera jausiko. Era berean Satanas be: bere barruan zatiturik badago, zelan iraun leike haren erreinuak? Zuek dinozuenez, Nik deabruak Beeltzebulen indarrez botatzen dodaz. Baina Nik deabruak Beeltzebulen indarrez botatzen badodaz, noren indarrez botatzen ditue zuen ikasleek? Horregaitik, zeuon ikasleak izango dozuez epaile. Baina Nik deabruak Jainkoaren indarrez botatzen badodaz, garbi dago heldu dala zuengana Jainkoaren erreinua.

Gizon indartsu batek, armatuta, bere jauregia jagoten dauan bitartean, seguru daukaz bere ondasunak. Baina

indartsuago dan batek eraso eta menperatzen badau, ziurtasuna emoten eutsoen armak kendu eta banatu egingo ditu hari harrapaturiko ondasunak.

Nire alde ez dagoana nire aurka dabil, eta Nirekin batzen ez dauanak banatu egiten dau».

Jaunak esana.

## Garizumako III. barikua

### I. IRAKURGAIA

*Ez deutsegu gehiago «geure jainko» esango geure eskuz eginei.*

Oseasen Profezia liburutik

*Os* 14, 2-10

Hau dino Jaunak:

«Bihurtu zaitez, Israel, Jaunagana, zeure Jainkoagana,
zeure gaiztakeriakaitik jausi zara-eta.
Prestatu egizuez berba egokiak eta bihurtu Jaunagana;
esaiozue: "Kendu egiguzu gaiztakeria guztia,
eta hartu onez geure ezpanez egiten deutsugun oparia.
Ez gaitu Asiriak salbatuko;

ez dogu ustea guda-zaldietan jarriko,
eta ez deutsegu gehiago 'geure jainko' esango geure eskuz eginei.
Zeugan aurkitzen dau umezurtzak errukia".

Neuk osatuko dot hareen desleialkeria
eta bihotz zabalez maitatuko ditut,
urrundu dot-eta hareengandik hasarrea.
Iruntza lez izango naz Israelentzat;
lilia lez loratuko da
eta Libanoko zuhaitzak lako zuztarrak botako ditu;
kimuak sortuko jakoz;
haren ederra olibondoarena lakoa izango da,
eta haren usaina Libanokoa baizen gozoa.

Haren kerizpean biziko dira barriro,
garia lez bizibarrituko dira,
mahastiaren antzera loratuko
eta haren ospea Libanoko ardaoarena lakoa.
Efraimek esango dau:
"Zer ardura jataz sasijainkoak honezkero? "
Nik, Jaunak, erantzuten deutsat eta

haretaz arduratzen naz.
Zipresaren antzeko naz Ni, beti berde:
Nigandik datorkizu frutua.

Jakitunak ulertu begi hau guztia,
burutsuak jaso begi esanahia.

Bai, zuzenak dira Jaunaren bideak,
eta zintzoak horreetan dabiltz;
pekatariak, barriz, jausi egiten dira».
Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 81 [80], 6c-8b. 8c-9. 10-11b. 14 eta 17 (R/. ik. 11 eta 9a)

R/. **Neu naz Jauna zure Jainkoa, entzun nire ahotsa.**

V/. Berba ezezaguna entzuten dot:
«Kendu neutsun zama lepotik,
askatu neutsuzan eskuak lan astunetik.
Larrialdian dei egin zeunstan,
eta libratu zindudazan. R/.

V/. Ekatxaren barrutik erantzun neutsun,
Meribako uretan aztertu zindudazan.
Entzun, ene herri, ohartuazoten

deutsut.
Entzungo deustazu, Israel! R/.

V/. Ez izan zeugan beste jainkorik,
ez gurtu jainko arrotzik.
Neu naz Jauna zure Jainkoa,
Egiptotik atara zinduzana. R/.

V/. Ai neure herriak entzungo baleust!
Ai Israel nire bidetik balebil!
Garirik onenaz janarituko neuke neure herria,
eztirik gozoenaz asetuko». R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Mt* 4, 17

V/. Bihotz-barritu zaiteze, dino Jaunak,
hurrean da-eta zeruetako erreinua.

## **Ebanjelioa**

*Jauna gure Jainkoa Jaun bakarra da.*
*Maitatu egizu Jauna.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 28b-34

Aldi haretan, hurreratu zan Jesusengana lege-maisu bat eta itaundu

eutson: «Zein da agindu guztietan nagusiena?»

Jesusek erantzun: «Hauxe da nagusiena: “Entzun, Israel: Jauna gure Jainkoa Jaun bakarra da. Maite egizu Jauna zeure Jainkoa bihotz-bihotzez, gogo osoz, adimen guztiz eta indar guztiz”. Bigarrena, barriz, hau da: “Maitatu lagun hurkoa zeure burua lez”. Ez da honeek baino agindu handiagorik».

Lege-maisuak esan eutson: «Ederto, Maisu; egia dinozu Jainkoa bakarra dala eta ez dala besterik esatean, baita ha bihotz-bihotzez, adimen eta indar guztiz maitatzea, eta lagun hurkoa nork bere burua bezala maitatzea, erre-opari eta sakrifizio guztiak baino hobea dala esatean be».

Eta Jesusek, zuhur erantzun ebala ikusirik, esan eutson: «Ez zagoz urrun Jainkoaren erreinutik».

Eta handik aurrera, ez zan inor itaunik egiten ausartzen.

Jaunak esana.

## Garizumako III. zapatua

# I. IRAKURGAIA

*Nahiago dot maitasuna, sakrifizioak baino.*

Oseasen Profezia liburutik

*Os* 6, 1-6

Zatoze, bihurtu gaitezan Jaunagana;
harek urratu gaitu eta harek osatuko;
harek zauritu gaitu eta harek deuskuz zauriak lotuko.
Egun bitan biziazoko gaitu,
hirugarrenean biztuko
eta haren aurrean gara biziko.
Ahalegindu gaitezan Jauna ezagutzen:
egunsentia baizen ziur helduko da,
neguko euria lez etorriko jaku,
lurra bustitzen dauan udabarriko euria lez.
«Zer egingo dot zugaz, Efraim?
Eta zer zugaz, Juda?
Zure maitasuna goizeko lainoa lakoa da,
behingoan kentzen dauan goizeko iruntza lakoa.
Horregaitik zauritu ditut profeten bitartez,
horregaitik emon deutset heriotza neure ahoko hitzez.
Nire epaiak argiak lez egiten dau distira,

nahiago dot-eta maitasuna sakrifizioak baino,
Jainkoaren ezaguerea erre-opariak baino».
Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 51 [50], 3-4. 18-19. 20-21b (R/. ik. *Os* 6, 6)

R/. **Nahiago dot maitasuna sakrifizioak baino.**

V/. Erruki nitaz, ene Jainko, zeure maitasunaz,
kendu nire hobena zeure neurribako errukiaz.
Garbitu nagizu zeharo neure errutik,
garbitu neure pekatutik. R/.

V/. Sakrifizioak ez dozuz atsegin;
erre-oparia eskeiniko baneutsu, ez zeunke onartuko.
Damuz hausiriko espiritua da
Jainkoak nahi dauan sakrifizioa;
Zuk ez dozu gitxiesten, ene Jainko,
bihotz hausia eta umildua. R/.

V/. Agertu zaitez, Jauna, onbera Sionegaz,

berreraiki Jerusalemgo harresiak.
Orduan onartuko dozuz legezko sakrifizioak
eskeintzak eta erre-opariak. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Sal* 95 [94], 8a. 7d

V/. Gaur, ez gogortu bihotza;
entzun Jaunaren ahotsa.

## EBANJELIOA

*Zergalaria Jainkoagaz adiskideturik bihurtu zan etxera;*
*fariseua, barriz, ez.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 18, 9-14

Aldi haretan, parabola hau esan eutsen Jesusek euren buruak zintzotzat hartzen eta besteak gitxiesten ebezan batzuri: «Gizon bik igon eben tenplura otoitz egitera, bata fariseua eta bestea zergalaria. Fariseuak, zutunik, holan egiten eban otoitz bere barruan: “Eskerrak emoten deutsudaz, ene Jainko, besteen modukoa ez nazalako: lapur, gaizkile, adulteriogile; ezta horko

zergalari horren modukoa be. Astean bitan egiten dot barau, eta daukadazan guztien hamarrenak emoten ditut”.

Zergalaria, barriz, urrun geldituta, ez zan begiak zerura jasotzera be ausartzen, ezpada ze, bular joka ebilen, esanez: “Ene Jainko, erruki zakioz pekatari honi!”

Hara zer dinotsuedan: azkeneko hau Jainkoarekin adiskidetuta bihurtu zan etxera; bestea, barriz, ez. Izan be, bere burua goratzen dauana beheratu egingo dau Jainkoak, eta bere burua beheratzen dauana goratu».

Jaunak esana.